

IRAKURMENA

IZENA:

## BANGKOK: KAOSAREN XARMA



**Irakurri testua arretaz.**

Orain hamabost urte, Bangkok zen munduko hiririk nahasiena zirkulazio-kontuetan. Barregarria ere bazen nahasmen hura, tuk-tuk izeneko motor saldoari esker. Kabinadun motor horiek taxi-lana egiten dute. Berez bi lagunentzako dira, baina familiak ere ikusten dira kabina barruan, denak hantxe sartuta. Zarata (hortik datorkie izena) jasangaitza ateratzen dute. Abiada-muga dute, orduko 40 km. Hala ere, gutxi fida! Izu laborria eta zorabioa sentituko dituzu-eta burmuinean. Edozeinek esango luke gidariek euren burua hil nahi dutela. Halakoxea baita zirkulazio-zirrikiturik txikienetik ere tuk-tuka sartzeko duten trebetasuna! Helmugara iritsi izana miraritzat joko du bidaiariak, zirrara barrenean eta trafikoaren kearen beltza aurpegian dituela!

Agintariek Bangkok hiri modernotzat jotzea nahi zutenez, ohartu ziren aipatutako burrunba hori guztia ez zetorrela bat nahi horrekin. Beraz, hainbat neurri hartu zituzten zirkulazio-arazoa bideratzeko: metroa lur azpian, lur gainean errail bakarretik doan trena eta hainbat autobide. Bada, burrunbak bere horretan jarraitzen du: erosahamena igo egin denez, hiritar askok autoa erosi dute, eta tuk-tuk horiek baztertu. Ondorioz, jada ez dira nagusi hirian. Orain, motor berezi horiek turistek erabiltzen dituzte, beste inork ez ia, eta bidaia ere halaxe ordaintzen da: turista-prezioan. Dena den, egia da ezin dela Bangkok ikusi eta tuk-tuk batean ibili ez.

Zorionez, Chao Phraya ibaian gora eta behera, autobusarena eginez dabiltzan gabarrek hiria zeharkatzeko modu merkea eskaintzen dute. Entretenigarria eta azkarra da hiriko biderik nagusiena den ibaian barrena joatea, Bangkok alderik alde igarotzeko. Gainera, ikusi nahi den hori moilaren batetik gertu baldin bada, ez izan zalantzarik, hartu gabarra! Bidaiari berdin-berdin jango diozu denboraren erdia. Zorte apur batekin, gainera,monje tibetarrak izango dituzu bidaide, euren tunika biziekin! Izan ere, tenpluetara joateko eta etortzeko, moilak erabiltzen dituzte monjeek. Ikuskizuna, behintzat, ziurtatuta duzu!

Dena esatera, trafikoa zerbait hobetu da. Lur gainean errail bakarretik doan trena ondo dabil, eta garraiobide garbia da. Dena den, errail horri eusten dioten zenbait zutabek hiri barruko kale ugari hondatzen dituzte. Orain, aireporturako ibilbidea ordubetean baino gutxiagoan egiten da; lehen, aldiz, ia lau ordu behar ziren. Zorionez, esan daiteke Bangkok asmatzen ari dela berezkoari eutsiz modernizatzen.

Gauzarik harrigarrienetako bat hauxe da: kontsumoak gora egin badu ere, erlijioak oso bizirik segitzen du thailandiarren artean. Tenpluak bete egiten dira, eta arrunta da, Europan ez bezala, gazteak ikustea. Europan, gazteria urrundu egin da erlijio-girotik; Thailandian eta Asiako Hegoaldean, ordea, ez. Han, euren erlijioa praktikan jartzen duten gazte asko dago, bai islamistak, bai budistak, bai hinduistak.

Erawan hotelaren tenplu hinduista oso harrigarria da. Jendetza dabilen bi kaleren bidegurutzean dago, eta gain-gainetik pasatzen da trena. Halere, hiriko zalaparta gorabehera, beti izaten dira ehunka hinduista otoitzean, edo intsentsuzko makilatxoak pizten, edo mesede eske. Hinduistarik hinduistenek ordaindu egiten diete dantzariei Brahmaren ohorez dantza dezaten. Hantxe dago, guztiaren erdi-erdian, Brahma, bere lau buruekin lepagainean.

Lasaiagoak dira tenplu budistak; arkitekturaren aldetik, ederrak benetan batzuk. Horri esker, monumentuak ikusteko munduko hiririk apartenetakoa da Bangkok: Wat Po, Wat Arun, Wat Mahathat dira sakratuenetako hiru. Tenplu horien ingurumariak dira egokienak monje budistak eta haien tunika biziak ikusteko. Azafrai-laranja kolore-bitarte guztiko tunikak ikus daitezke.

Beste tenplu bat ere bada, Wat Phra Keo, garrantzitsuena, hain zuzen. Han dago jadezko Buda ttipia, 66 zentimetro eskas garaia. Hura da Thailandiako irudirik gurtuena. Saltokitzarrak ugariak dira Asian, eta Bangkok hirian ere badaude, noski; esaterako, Siam Paragon izenekoa, barrenean Ferrari auto-markaren kontzesionario bat duena. Luxuzko hainbat hotel ere badira hirian, Oriental izenekoa edo Shangri-La, kasu. State Tower eraikinaren goialdean, berriz, modako tabernak daude, bai eta ikuspegi zoragarriak ere. Baina ez engainatu zuen burua! Erdi mailako klasea badu Thailandiak, alegia, kontsumitzeko nolabaiteko ahalmena duena, eta baditu aberaskumeak ere, baina askoz ere gehiago dira nekazari txiroak.

Ospe txarra ere badu Bangkok hiriak, toki askotan dagoelako prostituzioa, bereziki Patpong o Soi Nana eremuetan. Dena den, prostituzioari dagokionez, hiria ez dago Asiako beste hainbat hiri baino okerrago, nahiz eta ikuskizun erotikoak ikustera doan begiluzeak izan litzakeen arazoak eremuotan. Hala ere, Bangkok ez da hiriburu arriskutsua inongo saltsatan sartu nahi ez duenarentzat.